

JOSEBA ARREGI EROSTARBE

1946. Oñati.

1992. urtean atxilotu zuten estatu frantsesean eta 2000. urtean estraditatu zuten Espainiara. Egun Jaengo espetxean daukate. Erakusketa bat egin zuen Oñatin, bere jaioterrian, eta baita ere, Frantzian preso zegoelarik, areto batean edo bestean, bere lanen erakusketak burutu ziren.

EGILEA **joseba arregi erostarbe**

ARGAZKIAK **karla abarzuza**

DISEINUA **jabierna**

ESKER ONEZ:

**igor alvarez zubeldia eta alfredo** (KUKUTZA GAZTETXEA)

LEGE GORDAILUA.DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL: B[illegible]05

EUSKAL HERRIA 2004

**atara**miñe kultur elkarteak argitaratzen du



**atara**miñe

EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA ETA ARTE KOADERNOAK





Ez zaigu erraza suertatu Joseba Arregiren **KARTZELAKO LEIHOTIK** lan bilduma honi izen bat ematea. Hau ez da "katalogo" edota "bilduma" soil bat, ez eta ere "margo-liburu" bat. Guzti hori izanik, zerbait gehiago da. Bere militantzia politikoa dela eta, preso dagoen herritar xume baten "liburua" da, non sarritan irudiak aingurat-zeko hizkuntz piktorikoari errelatu literarioren beharra uztartzen zaion, era apal baina sakonki urrunetik mintzatu eta bere erakusketara etortzeko ezindua dagoenaren hitzez.

Euskal errepresaliatu politikoen sorkuntza artistikoak aurpegi asko ditu (literatura, bertsolaritza...). Kontua da Joseba Arregik paratutako liburua **atara**miñeren esku utzi duela eta guk, liburu honen argitalpenaz, leiho berri bat zabaldu nahi izan dugu euskal errepresaliatu politikoen sorkuntza piktorikoa ere lau haizetara zabaldua izan dadin.

**KARTZELAKO LEIHOTIK** honetan badago lekua ere Josebaren espetxe eta borroka lagunen margo eta poementzat, Mikel A., Kepa A., Xabier Tximeno, Xabier Aranburu *"Xomorro"* eta Sagardui Moja, "*Gatza*"renak, hain zuzen.

Liburu honek beste egile bat ere badauka, bere izena beste inon ikusiko ez duzun arren: **Nekane Basauri**, Josebaren neska laguna. Berak bakarrik daki zenbat maitasun, zenbat lan egin duen liburu honek argia ikus dezan.

*"Bilduma hau ez nuke Arte Plastikako espezialisten aurrean azaldu nahi, arteaz dauden kontzeptuak bestelakoak direlako; herritar xumeentzat da bilduma hau. Gure inguruak eta batez ere Abertzale mugimenduan hainbeste lagundu eta sufritu duenak erraz ulertuko duelakoan nago. Gure borroka maratoi bat dela diote, bada, maratoi honen ipuinak dizkizuet margotu".* Hauxe da Joseba Arregiren eskaintza eta guk zera gehituko genuke: liburu honen ekarpen nagusiak bere lekukotasun eta bitaltasunean kokatzen dira, denbora historiko eta kaleko zein espetxeko mundua begiztatzeko era zehatz batzuk isladatuz, aitaren etxe zaharra samintasunez oroitu eta askatasun eta justizian oinarrituriko etorkizuneko herri baten alde borrokatzen duen lagunaren begiradaz, alegia.

**atara**miñe



## MARGOEN TEKNIKA

Liburu honetako bildumaren margo gehienak olioz (hule) eginaz daude. Beste batzuk akrilikoz, gouache teknikaz ere, eta (marrazkiak) ikatzaz.

Fleury-ko kartzelan sei hilabetez "ikasten" moldatu nintzen. Osny-ko gartzelan bi urteren buruan landu eta Clairvaux-en hamar hilabetez burututako lanak dira. Bakar batzuk Navalcarnero espetxean eginak dira, Xabik ere han egin zituen bereak.

**Z**aila suertatzen da benetan tamainako mandatu bati eustea edo idaztea, Joseba eta Xabiren bizitzaz apenas ezer gutxi dakien pertsona batentzat bederen. Elkarri lotzen gaituen gauzen artean arerioak gure aurka buruturiko errepresioa dugu, zorigaiztoko egoera bat ehundaka kiderekin batera.

**P**reso egonik bakoitzak geureari eusten diogu bizitzari aurre egiteko "egun bat gehiago, egun bat gutxiago" leloari jarraiki. Joseba eta Xabierrek, sentimenak azalarazteko margotzearen bide malkartsuari ekin diote. Malkartsua hemen barruan askotan "erromeria" ederra suertatzen baita margoak, oihalak edota pintzelak lortzea, zoko txukun bat izatea, beharrezkoa den lasaitasuna izatea... Eta gogoak izatea ere bai.

**A**skori izugarri zaila egiten zaigu buru zein bihotzean izaten ditugun ideiak, sentimenak, sentsazioak, gogoak, aserreak, oroimenak, maitasun maila ezberdinak, herrimina, grina, amorrua, alaitasuna... azaltzea. Zailtasun ugari ditugu bisitan etortzen zaigun lagun minarentzako hitz goxo egokiak aurkitzen, gutun politak idazten, eskulan trebeak burutzen. Horregatik ezin ukatu inbidia pittin batek ere gure barrenak astintzen dituela liburuxka honetan ikus ditzakezuen lanei begiradatxoa egitean. Baina une batez besterik ez da hau gertatzen, irudien/margoen muinera begiratzean preso abertzaleen taupadak nabaritzeko aukera dudalako, duzulako, dugulako, dutelako.

**G**artzela ezberdinetan pairaturiko egoerak inongo oztoporik gabe agertzen zaizkigu hemen, egunez egun burura datozkigun oroimenak, senitartekoak, lagunak, gartzeletan topatzen ditugun "xelebreak", herriminak burura dakarkigun paisaia, abstrakzioak, maitasuna... batzuetan eztitasunez baina krudelkeriaz bestetan, horrelakoak baitira gartzelak. Kideen laguntasunaren aurrean jartzeak gure izaera desegituratzeko erabiltzen dituen bideak topa ditzazkegu. Gure herriak ere sasoi latzak bizi ditu, haize berriak ere etorriko dira...

*QUE EL SOL, LA LUNA, LES ESTRELLES*
*FACIN REALITAT ELS NOSTRES SOMMIS.*

**PERU**, NAVALCARNERO ESPETXEAN, 2001. URTEAN.

AURKIBIDEA

# SARRERA ONDOKO SINTESIA





Erakusketa batean margoak paratzen dira eta normalki ez lukete beste adierazpenik behar, margo bakoitzak duen espresioak adierazi beharko luke edukiaren esanahia. Gero bakoitzak bere interpretazioa egin dezake.

Katalogo honetan, ordea, idazkitxo batzuen laguntzaz azaldu nahi ditut, margoen "istorioak" hobeto ulertzeko.

Figuratibo/irudikor eta paisaia-margoak errazak dira ulertzeko, hor bertan dago subjektoa edo paisaia, eta pertsonak espresio zehatz bat edo bestea izan dezake, paisaiak ere argi bat edo bestea izan dezake, beraz, hori ulergarriagoa da. Besterik gertatzen da margo surrealista batean eta abstraktua bada ere zailagoa izan liteke ulertzea. Honetaz gain, denek dute istorio edo ekarpenen bat, horregatik ikustea laguntzeko bide diren margoen inguruko iruzkin laburrak agertzea otu zait.

Margolaritzan "lege" batzu daudela diote eta hauek betez gero margoek indar handia hartzen dutela, hau da, koloreen konposaketak, egiturak, irudizko osagaien kokaguneak... argiaren "zirkulazioa" edo arkitetura aberasten du. Ni bezalako batentzat nahiko kontzeptu ulergaitzak dira, beraz, neure era librean egiten ditut, "ordenua desordenatuz", gertakizun bat irudikatuz eta oroitzapenak paratuz. Margotan pintzelatzen dudana, nire gogoetan betirako geratzen da gordeta.

Nik ez nuke istorio bat *abstraktuan* edo *figuratiboan* zergatik egin dudan esaten jakingo. Ezta ere ez dakit, margo abstraktu bat batere ulertu gabe zergatik gustatzen zaidan. Eta hori polita dela uste dut, ulertu baino, lehen kolorean "edertasunak" zu "harrapatzea" edo liluratzea. Agian, nire lantxo hauek ez dute inor "harrapatuko" baina istorioa kontatu beharrean aurkitzen naiz berauen zergatia ulertarazteko.

“Istorioak” azalduz ikuslea motibatu nahi dut, gartzelako bizitzan dauden gorabehera, sentsazio eta sentimenduak helarazi.

Nahiz eta xehetasun guziak azaltzea ezinezkoa den, bilduma honetan gogoeta eta sentimen ugari agertzen dira: sufrikarioa, malenkonia, amorrua, *bizinahia eta ezina*, bizitzaren zutabea, borrokaren garrasia, amodioaren beharra, maitasuna... eta beti Euskal Herria gogoan.

Gure iraupena borroka latza da, nahiz eta kanpotik horrela ez ikusi. Hala ere, nire margoetan ez dut krudeltasun hori erakusten. Bizitza “normaltasunean” eramaten saiatzen naizen bezala, margoak ere ahalik eta txukunen egiten saiatu naiz. Badira tarteka margo trake-tsak, baldarrak, gertakizun ilun baten albistea entzuten nuelarik, bur-kide bat akatu zutela, kide bat jipoitu, tortura etengabeak eta bi estatuen atzaparrek egiten zizkiguten zauriak niregan ere eragina

zuten. Nire espatulak pultsua galtzen zuen eta bortizki zanpatuz egindako margo zirriborroak ez dira oso alaiak.

Hemen, gartzelan, bi mundu daude, bat gurea, Euskal Preso Politikoena eta bestea, Preso arrunten eta "Kosmopoliten" bizitza aspergarria. Haien ikuspegiak ere aukera eman dit irudi batzu sortzeko; monotonia, errepikapena eta gogaitasuna dira hauen bizitza tristearen zutabe/oinarri.

Bilduma hau ez nuke Arte Plastikako espezialisten aurrean azaldu nahi, arteaz dauden kontzeptuak bestelakoak direlako; sorkuntza eta arte "intelektual garaikide", kontzeptuala... etabar. Herritar xumeentzat da bilduma hau. Gure inguruak eta batez ere Abertzale mugimenduan hainbeste lagundu eta sufritu duenak erraz ulertuko duelakoan nago. Gure borroka maratoi bat dela diote, bada, maratoi honen ipuinak dizkizuet margotu. Joseba

## MAITE DUDAN ARANTZAZU

Euskal Herriko txokorik ederrena, zu Arantzazu,
zeure mendi eta basoak, harkaitz eta zelaiak.
Ez dira sastraka hutsak; badira pago-aritz, ugari zuhaitzak.
Baita ere, ibai ur-garbidunek osatzeko erbesteratuak

Hiru probintzietako mugarri den
Urbiako tontor gailurra,
egunero goizaldeko ekiak
egiten duen itzala.
Bere artzaiak babesteko,
zenbat euskaldun, zenbat
mendizalek hor hartzen duten arnasa.
Nik amets dudan arnasa.
Guk maite dugun itzala.
Argi egiten digun ekia.
Sasi tarte, maite dudan tokia.
Maite dudan Arantzazu; ezin zaitut sekulan ahaztu.

Zure maldako baserritar eta artzaiok:
nekazaritzak zigortzen zaituen,
Iparraldeko trumoiak zigortzen zaituen,
artzai eta baserritarrak:
hori duk euskal dotrina,
euskaldunok ikasi behar dugun,
euskaldunok gorde behar dugun,
zaindu behar dugun usai gozo duen
zaietz-malda.

Arantzazuko harkaitzaren gibelean diren mendi malda.
Zu zara arantza-leku,
amets-kabi, gorde-leku.

JOSEBA



ARANTZAZU SUNTSITUA

ArantzazukoAma Birjinaren istorioa duela bost mende gertatu zen. Errodrigo Baltzategi artzaiak arantza baten gainean, umea altzoan zuen emazte baten eskultura bat aurkitu omen zuen. Harrezkero, "*Arantzan zu*" baseliza, eleiza, komentua edo santutegia, historia izan da. Bi aldiz suteaz erre da eta aldi batez, Gerla Karlista giroan, GaztelakoArmadak su eman eta erre zuen.

ARANTZAZUKO INGURUNEAK.
UDALA ETA ANBOTO ATZEAN.





ARANTZAZUKO
GOSE GREBA 1.993





ARANTZAZU KUBISMOA.







ARANTZAZU. *GOIKO BENTA.*



ARANTZAZU. *SINDIKA JATETXEA*

Altuan Arantzazu
Bajuan Oñati
Zubillaga baserrian
Taberna beti
Hoiek ezagutu nahi
Nituzke hobeki
Paradisua zer den
"Xomorrok" badaki.

X. ARANBURU "XOMORRO"



## AZPILLETA BASERRIA

Hau da nire aitaren etxea. Gabriel Arestiren poemak dion bezala: *nire Aitaren etxea defendituko dut*. Hau da nere etxea, hor jaio nintzen, hor ikasi nuen natura maitatzen, hor jasan nuen etsaien zaplaztekoa, hor hartu nuen Aberriaren Kontzientzia. "*Ni ez naiz Herri honetakoa*" zioen euskal idazle batek. Ni bai. Nik Herri hau maite dut eta bere alde eman dut dena. Euskal Herriko milaka borrokalarik bezala, dena eman dut eta azkenean preso naukate azken ia 12 urte hauetan. Arantzazun dago Azpilleta. Toki zoragarria da eta bere ingurua gogoratuz margotzen dut. Plazer dudalako margotzen dut, baliabide gitxirekin baina aukera dudanean margotu edo marraztu egiten dut.





*KALE BORROKA*





*OKABE*

## HAU DA ENE ABERRIA

Lau ateak zabal
sukaldea txiki,
bihotza handi,
kolore biziak,
nonahi bideak.

Ipar-Ekialde, Iparralde,
hegoak zabal
hegoaldean sartalde,
zazpi lurraldeetan
hitz egiten dugu
debalde.

Hau da ene Aberria,
erdian estu,
inoren esku eta,
txikian handi,
amorratasunean ibil!
hobe, apalagoa murgil
hau da ene,
nire Aberria.




ITSASU, *ERROLAN*-EN PASABIDEA





## FRANTZIAKO EUSKAL HERRIA.

Hego Euskal Herriko biztanle gehiengoak "Ipar-Ekialde"ko hiru lurraldeei Frantzia deitzen dio. Maule, Baiona edo Garazi aipatzean "han Frantzian" eransten diogu.

Irun-Behobia muga horren inposaketak ezarri duen "kultura" dugu gure "kaskoetan". Baiona edo Miarritzera erosketak egitera joan behar dutela entzun eta "nola? Frantziara?" galdetuz lasai asko geratuko zaizu auzoa. Mendeetako muga hor egon arren, gure "mentalitatean" ipini dugu mugarik handiena. Azken urte hauetan "muga hori" fisikoki desagertu arren, gure buruetatik ez da kendu.

Hegoalde-sartaldeko euskal gizarteari errazago egiten zaio Donostiatik Bilbora edo Gasteizera joatea Miarritzera joatea baino, nahiz eta fisikoki eta teknikoki hurbilago egon. Psikologikoki muga dugu eta "kulturalki" ere Frantzia da. Azken 30 urte hauetan ederki asko ikusi dugu "Ipar-Ekialdeko" Euskal Lurraldea nola saltzen joan diren. Euskal Herria Frantziari salduz doa eremuz eremu eta diruzaleen goseak ez du oztopo handiegirik izan hori gauzatzeko.

Ipar-Ekialdeko lurraldeetan (Xiberuan, Behe Nafarroan, Lapurdin) Euskal sustrai sakonak izanik, Euskal Herriak bihotza ere han duela esango nuke.

Margo hauetan agertzen dira Lapurdiko kale estuak, Garazikoak edota Kanboko auzoak. "Bas Cambo" deitzen diote frantsesez oraindik, batere lotsarik gabe etxalde horri. Hala ere, bertan



GARAZI



KANBO KARRIKA ESTUA

aurkitu koditugu euskaldun zahar peto-petoak galdezka: Nongoa zire? Nongoa, espainola?…Ez da harritzekoa guk, hegoaldekoek, Lapurdiri Frantzia deitzen badiogu haiek guri "Espainolak?" galde egitea.
Etxe hauek ikusi bezain pronto konturatuko zarete Lapurdiko etxaldeak Euskal Herrikoak direla, estetikoki gure nortasun kulturala dutela, kolore txuri-gorri-berdeaz eginak, euskal kantek dioten legez, eta leku batzuetan euskaraz mintzo direla.
Ipar-Ekialdeko lurraldeak Estatu Frantsesaren menpe ditugu administratiboki, politikoki halanola, eta Ekonomikoki edo Kulturalki. Aspalditik lurralde turistiko bihurtzen dabiltza Jauntto Politikoek; hotel, turista-etxe, azpiegitura ugari eraikitzen ari dira turismoari begira. Gertatzen ari denak Euskal Herriko lurralde bat desitxuratuko du, frantsez diruduna jabetzen doa, masifikazio frantsesa... Geroan ere Frantzia deituko diogula kontuan izan! Xiberua, berriz, hustuz doa. Euskal Herriko "txokorik ederrena" odolusten dago. Laguntza ekonomikorik gabe, garapen laguntzarik gabe utzi dute. Behar bada "utzi dugu" esan behar nuke, denon ardura baita!
Esaldiak dio: "irudi bat hobe, mila ele baino". Herri bat desagertze ko bidean dihoala sentituz gero, irudiak, garrasiak, idatziak eta zutabeak ere ez dira soberan izango.

IPARRALDEA EDO IPAR-EKIALDEA SALBA DEZAGUN!



LARRUN
URRUÑATIK IKUSIA



MUGARRE,
MAIALEN ETXEA



IPARRALDE,
ITSASO HERRIA
ERROLAN-EN
PASABIDEA



KANBO BEHEAN

*AZPILLETA* BASERRIKO SENDIA:
IZEBA-AMONA, GURASOAK ETA
ZAZPI NEBARREBAK



JOSEBA 13 URTEKIN

Zazpi neba-arrebengandik zaharrena da. 1946ean AZPILLETA baserrian jaio zen. 14 urtekin fabrikan lanean hasi zen, Arantzazuko Apaiztegitik pasatu ondoren. Beste 15 urte fabrikan ibili zen baserrian laguntzeari utzi gabe.



ANAIA MIKEL

Aitaren etxea zutik eutsi nahian,
anaia Mikelek baserrian eta artzautzan dihardu.







AITA MUSEAN



ARTZAIA ETA MENDIZALEAK

## AITAREN ETXEA

*Azpilleta* Baserrian jaio nintzen eta oso gogoko dut neure etxea Azpilleta dela esatea. Baserriaren kokagunea leku traketxean egon arren, beti izango dut bihotzean nire Aitaren etxea.
Euskal Poetak asmatu esaldia da "gure Aitaren etxea defendatuko dut". Azpilletako kasuan, gure Amak ere badu meriturik, bere sabeletik jaio baikinen zazpi neba-arreba!
Azpilleta baserria orain dela ehun eta berrogeita hamar bat urte eraiki zuten. Arbaso-aitona hura, Arrola baserriko senditik zetorren. Bizitza eta beste familia bat eraikitzeko asmotan, Azpilleta baserria eraiki zuen. Garai haietan, lur malkar zati bat, hiru dozena ardi eta baserria altxatzea izango zen ezkonsaria, nahiz eta harkaitz tartean eta malkarrean izan, garai haietarako bazen zerbait...
Nire ustez, "gogotxarrez" emandako lurra eta lekua da hura, edo "buru arinkeriaz" egin zutela kokagune hartan gure etxea.
Euskal Herrian dauden etxaldeak eta baserriak iparraize hotz eta haize-lasterretatik babestuta ("izkutuan") behar den bezala eraikiak daude, eguzkiari begira, egun osoz eguzkiak etxaurrea hartzeko eran. Baina gure baserria ipar-sartaldeko haize zorro-




URBIXAKO ARTZAIA.





ASTEBURUKO IBILALDIA



tzak bete-betean harrapatzen du eta haizea sapaitik sartzen denean gaueko teila-hotsak izutzekoak izaten dira.
Azpilletako olizarrak eta gaztainondoak zahartu ahala usteltzen eta desagertzen doaz. Azpilleta lekuz aldatuko nuke baina hori ezinezkoa da. Neure jaiotetxea da eta "txakur gosetiak eta zigortuak" bere etxeko txokoa maite duen bezala nik ere neure etxea izugarri maite dut.
Azpilleta baserria, Artaso, Gallarbeko eta Arantzazuko auzoak beti daramazkit bihotzean. Neure gogoetako irudietan daramazkit: aita, baserria, sendia, aziendak, ardiak, kabalak eta inguruko etxaldeak, hor ditut beti present. Urtean zehar Herritik urrun eta ziega ilunetan bizitzera behartua naukaten arren, margo hauen bidez bizitzen dut oroitzapenetan azaltzen zaizkidan pasarteak.

"GUREKIN OROITZEN DIREN HORIENAK GARA"

## MAITALEEN BILGUNEA

Maitasunezko eta amodiozko gutunek eragin haundia dute presoen bizitzan. Agian, aske daudenek baino askoz ere gehiago estimatzen ditugu, arloan gehiago sakontzen eta luzeago idazten.





*LIBERTÈ,*
*ÈGALITÈ,*
*FRATERNITÈ?*

**PARIS - PARIS**



NOTRE-DAMME

Ai Paris, Paris!

mundu osoaren babesleku,
Askatasunaren eredu,
berdintasunaren
bultzatzaile,
ikusleen unibertsitate,
iheslarien laguntzaile…
Zer hintzen eta non hago,
Paris? Euskal Abertzaleen
Gartzela bihurtu da Paris.
Euskal gudarien epaitegi!
Amodioa genian eta
gorroto bilakatu da Paris
handia...



MAITASUNA

Maitasuna pentze bat da

Laborari bakoitzaren pentzea bezala

Baina, pentze honetan,

Esparru bat,

Txoko batean, txukun agertzen denean;

Egiazko maitasuna norbaiti dio.

Amodioa ez da ikasten

Ez eta ikusten ere

Ez saltzen edo erosten! Sentitzen baizik.

Amodioa sentitzen denean

Ez eduki lotsarik

Ez eta beldurrik ere

Maitasunak laguntzen badio,

Ez da iraunen gerlarik.

MAITALEA
Bisita bezperako prestakuntza Bidaiko
nekadura guzien gainetik ilusioz beteta.



MAITALEA AMETSETAN



BISITA ORDUAREN ZAIN

*NOSTALGIA?*

Arrebak, emazteak, neska lagunak, bisitaren zain…

Zaila egiten zaigu oso porlanezko lau paretetan eta alanbradaz josita dauden harresi hauen artean gauden batzuoi maite dugun jendeari gure sentimenduak hitzen bitartez adieraztea. Gartzelaren barruan sentsazioak zein sentimenduak zorroztu egiten dira, askoz ere sakonagoak. Kaleko elkarbizitzaren egunerokotasunean begirada, laztan, muxu… batek, bihotzaren barren-barrenetik ateratzen zaiguna azalarazten du. Baina maite duzun pertsona hilean behin edo birritan ikustera mugatzen zaituztenean, astean bost minutuko dei pare bat izateko aukera besterik ez duzunean, hitzek berezko izaera hartzen dute, sentimenduak garraiatzen dituzten tresnak bihurtzen dira.

Esanahi hutsetik haratago joaten dira eta askotan, zaila da sentitzen dugun osotasuna hizkien bitartez luzatzea. Amorru izugarria ematen du bihotza bor-bor jartzen dizuna modu ezberdinez ezin adieraztea. Horretarako irakurtzen eta idazten gure burua hezitzen saiatzen gera.

Hala eta guztiz ere, gutunetan jartzen ditugun hiru hitz xume horiek dena azalarazten dute: maite haut laztana!

PERU



MAITALEA KARTZELAN



ENE MAITIÑOA

Ene Maitale,
bisitari,
komunikatzaile,
idazle,
irakasle.
Haiek gure
bezain gu
gire haien...



OLATZ

AINHOA





Atzean utzi zintudan
Agur esan gabe, tristuran
Azken begirada gabe
Aldapak igoz eta jaitsiz
Mendi hostotsuan
Oinatzak ezabatuz
Desegur geroa
Hainbat hotz sentituz
Zure altzo babesgarritik
Urruntzen
Umezurtz oihan arrisku
Batean ihesean sentituz.

Argazki bakoitzean bilatuz
Egutegietan aurkituz
Egunkarietan topatuz
Laztantzen zaitut.
Hatzamar puntakin
Eguzki, zeru, laino
Harriz harri
Marrazten zaitut.
Irriz, malkoz
Begiratzen zaitut.

Kepa A.

*OSINTXO*







1942. ALEMANAK KANBON



MAIALEN GASTIGAR.
MARGOLARIA.

Ene laguna.
Aholkulari eta animatzaile.
Estatu Frantseseko
gartzelan dozenaka bisitari
izan dut.
Maialen izan dut bat, beti
prest laguntzeko.
Bera da
"Kantoinako Erregina",
baratzeko lore,
lorearteko tximeleta.
Loretokiko kamelia zera zu.







SHERPA *ANONIMOA*

SHERPA *ANONIMOA.* 1980go urte inguruan ZABALETA mendizalea Everesteko gailurra zapaldu zuen lehen euskalduna izan zen. Sherpa baten laguntzaz igo zuen (Chomolungma mendi sakratua). Sherpa hau, ikurrina eskuan zuela agertu zen egunkari ko azala guzietan; ikurrina, Anmistia, Eguzki Antinuklearra eta beste zenbait ikur ere eraman zituzten gailurrean Askatasunez astintzeko. Oso ekintza historikoa burutu zuten eta ni ere hunkitua geratu nintzen.
Harrezkero ere Sherpa ugarik lagundu dituzte euskal mendizaleak Himalayako mendi tontorretara, denek ikurrina sinbolo gisa eskuan hartuta. Herri zanpatu baten aske izateko grina, gogo eta beharrak garamatza tontorretara ikurrin eta ikur-oihal horiekin.
Ikurrina da ASKATASUN GABEZIAREN IKUR.
Egun batez, gure Aberria aske izango delarik, ez dugu hainbeste oihal-trapu eta ikurrin azaldu beharrik izango.
Horra hor Sherpari oroitzapen gisa eginiko irudia.
Euskal abertzale bati Everest gailurrera igotzen lagundu zion "Sherpa" anonimoaren omenez. Berak ere *Euskal Presoak Etxera!* zioen.

**LEMOIZen ITZALA**
Aranguren (errausketa planta) aspaldi egin zuten. Itoiz ere egin dute, Boroa (elektrika planta) ere egingo dute baldin eta herritarren indarrak ekiditzen ez badu. Herritarron gehiengoaren borondatearen aurka egin dira eraikuntza ikaragarri hauek. Sistema kapitalistak ("liberal" deitzen dieten hauek) ez du herriaren gehiengoa begiratzen, ezta errespetatzen ere. Haiek diruari eta etekinei begiratzen diote eta obra-proiektu bat mozkin-errenta ateratzeko moduan ikusten badute, hor jarriko dituzte euren interes eta indar guziak.

Eraikuntza bat "konfliktiboa" izango dela sumatzen badute herriari eta gizarteari "ziria sartuko" diote, gezurrak asmatuko dituzte, beharrezkoa dela esango diote, herriak "irabaziko" duela, lanpostuak sortuko dituztela, "modernizatu" egin behar dugula, energia sortuz aberastasuna ekartzen dutela etab...

Euskal Herriko ehundaka proiektu, erraikin handiak, kapitalaren interesen menpe ari dira eraikitzen, gehienetan herritarren babesik gabe, ezjakinean edo engainatuz ari dira.

Horrela hasi ziren Lemoiz Zentral Nuklear munstroarekin 1978-1982 urte bitartean. Martxan jartzeko gutxi falta zelarik, behartuak izan ziren ZENTRAL NUKLEAR hura bertan behera uztera. Izugarrizko herri borrokak, B.A.ak eta mobilizazioek geldiarazi zuten munstro hura.

Garai haietan "Chernovil"eko tragedia ez genuen ezagutzen, orain badakigu ZENTRAL NUKLEARrak zer ondorio duen eta berriro beste Lemoiz bat asmatuko balute Euskal Herriko inork ez luke ametituko.

"Lemoiz marrazki karikaturak" esanahi garrantzitsua dauka. Asko borrokatu behar izan genuen hura geratzeko, eta suntsitzea eskatzen bazen ere, hori ez genuen lortu. Asko kosta zitzaigun hura geratzea: hildakoak, atxilotuak eta sofrimendu ugari. Mobilizazio orokorra eta borroka mota guziak beharrezkoak izan ziren *obratzar* hura geratzeko unean.

Lemoiz martxan egongo balitz erdi kutxatuak eta "izuak jota" biziko ginateke, Euskal Herri osoa egongo baitzen Estatu Espainolen Estrategi Politiko Militarren menpe. Lemoizen irradiaziopean biziko ginateke.

Ezin dira konpara Zentral Elektrika (Boroa), Aranguren, A.H.T., E.V.E.ko



"Eholiko basoak" eta Itoiz bezalako proiektu erraldoiak Lemoizekin, baina proiektu guzi hauek ere izugarrizko kaltea ekarriko diote Naturari, Ingurumenari; Ekologiari eta Gizartearen oreka eta osasunari.
Euskal Herriko ingurumena eta etorkizuna zaindu behar dugu, Herri osoaren beharretara eraikiz eta ez lau "kazike" uholde katastrofikoaren "Mamua" ere hor geratzen zaigu Damoclesen Ezpata bailitzan.
"Hau zer, obra guzien aurka?" esango du batek... Ez, ezta pentsatu ere! Obra erraldoi guziek herri osoaren babesa behar lukete, behar bada erreferendum bidetik onartuak. Herriak behar dituen infraestruktura, komunikazio, errepide, energia ez badiogu zanpatuko gaituelako. "Jaunttoek" ez dute bihotzik Aberriarekin, ez dute sentimenik edo eskrupulurik; manipulazioa eta gezurra dute arma-tresna, dirua helburu eta "uniformedun txapeldunak" babesle.

LEMOIZ GOGORATUZ
EUTSI HERRI EKIMENARI!!!



edo kapitalisten kapritxoetara erabiliz eta haien esanetara makurtuz.
Itoiz egin dute, gezurra erabiliz egin ere. Jada bete dute eta bihar urez gainezka izango dugu eta ur hori ez da izanen Nafarroa eta beste Euskal Herriko beharrak betetzeko, Estatu Espainiarra indartu eta bere golf zelaien egarria asetzeko baizik; Estatuen eta "Unionisten" inposaketa izan baita!. Kalte handiena egin dute, ekosistema eta natura izorratuz, baina iturri edo naturgintzako proiektuak Eraikuntza Nazionalerako proiektuak dira eta denon babesa edo onarpenarekin egin behar dira.
Irudi bat aitzakitzat hartu dut baina "Lemoiz txiki " asko ari dira herriz herri eraikitzen, "adreiluak" diru asko mugitzen baitu bere *nepotismo* eta ustelkeria guziekin. Beraz, ez dugu atsedenik izanen, Lemoizeko garaipena gogoan izanik, adi egon gaitezen, etsaiari "gogor egiten"





"ANTSIETATEA"

Maitasuna eta eromena funditzen diren unea.

Frantziako gartzela bakar batzuetan suertatzen da zorioneko bisitan horrela besarkatzea. Kontrola ezinezko gogoak garamatza sosegu bilatzera.



ANTSIETATEA

Kontrola ezinezko gogoak garamatza familiakoak besarkatzera, lagunak ikustera. Etengabeko"zer moduz?" galderarekin mahai batean esertzera gonbidatzen ditugu, urte luzeetan izan ez dugun aukera "lasaian" eskutik oratuz, hortik xirri eta ferekaz, musu eta irriz, urduritasunak erabat desorekatuak ditugu. Euskal Preso Abertzaleok badakigu hau zer den. Bost, sei edo zortzi urte pasa ditugu Fresnes, La Santé edo Fleuryn eta, halako batean, "Presondegi zentral" batean aurkitzen zara bizitza oso ezberdin batean.

Maitalearen berotasunak eta gure sugarrak mintzalekua "sumendi" bihurtzen dute, presoaren goseak eta antsietatea lagun. Senideek eta lagunek ere ez digute hutsegingo etxeko eta Euskalerriko jaki goxoekin.

Batek zioen: ez nuen uste, eta sekula pentsatuko ere, hain leku traketsean hainbesteko emozioak eta sentimenak era pozgarrian igaroko nituenik. Beraz, "Antsietatea" margoa izpiritu hortatik "irtendakoa" da

## ***KROMA**ren OMENEZ*



Euskal Herriaren alde borrokatzeko era asko dago eta Kromarena da bat, bere Herriaren alde hil arte borrokatu zuen pertsonarena. Euskal Herriak Estatuaren aurka daraman gatazkan ehundaka militantek eman dute euren bizia: lubakietan, barrikadetan, istripuetan, gartzeletan, atzerrian, komisaldegietan, etab. Badira anonimoak, ezagunak, lagunak, izen handikoak edo famatuak… baina ESTEBAN NIETO, "Kroma" dut hautatu margo honetan paratzeko. Kartzelako ospitaletik atera zenean, hil zorian, ikusi nuen berriro bere argazkia euskal egunkari batean, aurpegi ihar, zurbil, Kromaren bizar zuri, begi -zulo itzelak! Baina bere bi begien zeharkako soak zeozer adierazten zuen, oso hunkituta sentitu nintzen… Handik egun gutxira zendu zen.

Kromaren bizitza ez dut ondo ezagutzen, atxilotua eta torturatua izan ondoren, Estatu Espainoleko gartzelan oso tratu "iraingarria" eta krudela pairatzea egokitu zitzaion beste hainbat burkideri bezala. Egokitu zitzaiola esatea ez da hitz egokia. Euskal Preso batzuek "tratu eta egur bortitzagoa jaso dutela begibistakoa denez", egokitu zitzaiola diot, Salto del Negrora edo Algeciras, Ceuta, eta "Kasakristora" joatea egokitzen-tokatzen zaigun bezala.

Hil arte borrokatu zuen. Gartzelan presoen duintasun eta eskubideen defentsaren alde aritu zen, nortasuna eta ohorearekin… Gartzelako iraupen luze honetan jaso zituen jipoiak, borroka planteak eta ondorioa: militante baten osasuna pikutara! Gartzelan ezin gara gaixotu, bestela… kitto! Ez dugu sendatzeko eta artatzeko beharrezko medikuntzarik. Ez dugu zaintzeko eta osatzeko eskubiderik.

Kroma urte luzeetan zehar xehatu zuten, egurtu zuten Estatu Espainoleko botijeroek, baina Kroma ezin izan zuten makurtu, zezen bat plazan bezala defendatu zen eta ezpataren zauriekin "ihes egitea" lortu zuen, bere Euskal Herrian azken arnasetan pausatzeko, zendu zen arte.

Kromaren omenezko margoa da hau, oroitzapena da istorio, Kromaren borroka zezenaren begiradan eta adar zorrotzetan ageri da… Estebanen borroka luzea margo bateko zirriborroan atondu dut. Bere historia, istorio abstraktura egokitu da kolore biziz. Azken finean, borroka, festa, kirola eta amodioa, denak, heriotzan bukatuko baitira… Baina aske izateko ametsean.





MATXINADA



Gartzelan igaro ditugun urte luze hauetan etengabeko borrokaldiak egin ditugu Euskal Preso Politikook. Lekuan lekuko protestak, gartzela bakoitzaren arazoak zuzentzeko, kide batzuen egoera okerrari laguntzeko edo kolektibo osoaren eskubideen aldeko borrokari ekiteko… Non-nahi eta sakabanatuak egon arren, kolektiboaren elkarlaguntza sendoa izan da.

"MATXINADA" margoaren irudia ametsezko istorio krudela da. Presoek askotan ihes egiteko ametsak egiten ditugu. Ihesaldi ederrenak ere ametsetan izaten dira baina errealitatean ihes egitea "oso gatxa" ikusten da. Margo honetan azaltzen dena liskar bat dirudi. Kanpotik sartzen diren zezenak dira liskar horren protagonistak eta presoak askatzea dute helburu, kolore urdinez jantziak dauden zaldunak jasoko dituzte adarkada zorrotzenak. Askatasunaren nahiak Matxinadara ere eraman gaitzake.

Ikusleari margoaren esanahia berak asma dezan utziko banio, seguraski bestelako krudelkeria bat ikusiko luke. Gartzelak berak egunero egiten ditu krudelkeriak, izkutuan, ondo gordeta egin ere. Dena den, preso orok amets egiten dugu, pairatu eta pairatzen ari garen krudelkeriei mendekua hartzeko.

Gartzelan noizbehinka matxinadak izaten dira ihesaldiak prestatzeko. "Ongi antoatutako" borroka, lan eta ihesaldi ederrenak ametsetan prestatzen ditugu. Beti garaile ateratzen diren ametsak.

FRESNES

## ILARGI ZINTZOA

Badoa airoso,
eta ni
zilo madarikatuan naukate
gatibu, preso,
Egoera honetan irautea
Ez dut izanen goxo,
Barne iluna,
zikina,
Isiltasuneko giro hau da makurra,
Kanpora begira
Serka nabil
zirrikituan sartuz sudurra,
Leiho itsusi, barrote lodi, sare astun,
Gortina - errezel...
Ezin atera muturra,
Egunez ilun, gauean beltz,
Bada hor goian argia,
Aurkitu dut andere zuria,
Airosa dator maitale ilargia,
Gaueko hitzorduan,
Badabil munduan,
Zaude nire ondoan,
Ametsak buruan,
Maitale zuria;
Argi egidazu ekintza orduan.

FLEURY-KO GARTZELA GAU ILUNEAN

FRESNES





"FRESNESeko INFERNUA" Euskal Preso Politikoek ondo dakite gartzela honetako historia makabroa. Asko igaro dira toki honetatik, asko sufritu dugu hor. Etengabe borrokatu dugu. Ugari idatzi da Fresneseko erregimen militarraz eta bertan jasan ditugun tratu eta irainetaz. Ia dena esana dagoela uste dut, salaketa guztiak eginak daudela, baina gartzela honetako egitura eta "Aingeruen" (Matoien) portaera ez da aldatu.

Gizarte "Moderno"ko gartzelarik gogorrena da, makabroena, ilunena... Txiroak gehien esplotatzen dituzten lekua. Gutxieneko eskubideen gabezia somatzen da arlo guzietan, zerusapai urdina ikusten ez den ifernua dugu FRESNES. Presoen jantzi marraduna desagertu zen azken tokia. Heriotz zigorraz exekutatu (akatu) zuten azken gartzela , eta han gordetzen dute Gillotine famatu hura...





Nola liteke horrelako leku bat Europa garaikide honetan onartzea? Ikustekoak dira hango ziega ilunak, ikustekoak ere hango "patio-kaiolak", hango arratoi tropelak eta zikinkeria, ikustekoak dira hango leihoak. Giza eskubideen legeak debekatuak daude. Ikustekoa omen da (nik ez dut ikusi) isolamendu modulo berezia, non bakarrik zauden, inor ikusi-entzun barik, Matoiekin ere kontakturik izan gabe, atekorridore, eta patioetara burnizko barra eta sare artetik, piztiak kaiolan bezala eramaten zaituzten. Asko idatzi da baina egia osoa ez da sekula azalduko.

Guk, Euskal Presook, hala eta guztiz ere, bizitzeko daukagun gogo horrekin, beti aurkitu izan diogu "irtenbidea". Halako leku batean idazteko beharra sentitzen duzu, bisitaren beharra, marrazteko edo "garrasi" egiteko gogoa... Une gogor haietan ogi-mamiakin eskulturak egiten hasi nintzen, kartoi zatietan margotzen, "sukaldea" moldatzen, ordu luzeak ariketa fisikoak eginez nolabait betetzen. Ogi-mamiaz eta gatzarekin eginiko eskulturak hautsi, kendu eta debekatu zizkidatenean margotzeari ekin nion. Ur botilaren kartoiekin moldatzen nuen delako margolan hori. Orduan



OSNY-KO *MITARG*

egindako marrazki eta margoen artean egin nituen Fresneseko Eraikuntzari buruzko irudiak, oso ilunak, gogorrak, gaueko uneak ziruditen. Egunez ere ilun ikusten genuen, ikusi baino irudikatzen nuen eta oso margo traketsak, baldarrak, beltzak, urdinak, bukatu gabeak eta latzak dira.

Eraikuntza bakoitzak bere izena zeukan: "Batimen" (Modulo) 1, 2, edo Batimen 3. "Nor" Iparraldea eta "Sud" Hegoaldea, barrutik zeukan zatiketa fisikoan edo banaketan zetzan hori. Kanpotik begiratuz, etxebizitza zahar itxura dute, dena zikina, iluna, beltza... Barnean 700 matoi daude, aingeru zaintzaile eta etxebizitzako arduretan. Beste ia 4.000 preso gizakide era anonimoan... zaila benetan bizi molde horretan duintasunez irautea. Irakurri eta entzun izan dut "zaila dela zoriontsu izatea baina merezi duela, kosta ahala kosta, horretan saiatzea". Ados. Osasun mentala edukitzea da zoriontsu izatea. Kalean, istorio idazle batentzat zoriontsu izatea zaila bada, oraindik zailagoa da preso batentzat.

*Fresne*seko mundu ilun horren garraxia nola azaldu asma ezinik, eraikuntza zati batzu azaltzen dira irudi hauetan.

Portuges-mailua eskuin eskuan, zizela ezkerrean, eta kinki-kanka zurari kolpeka ari natzaio amorru biziz, lanean jardungo banu bezala. Enbor zati ikaragarria da eta ez dakit zer egingo dudan. Hor ari naizela lagun batek (Pellok) ea zer egiten ari naizen galdetu dit:
*"Zer? Etzekiat zer egingo dudan, baino Eskultura bat egiteko asmotan hasi nauk zizelakin. Zer dela eta ari haiz Eskultura egiten? zergatik? Beste ezertan kendu ezin dudan "ostixa" txarra botatzen diat hemen kolpeka!"*
Nire lagunak parre egin zuen. Zer aterako zen ez nekien hartatik, irudi gogor hau atera zen .
Uste dut ez duela azalpenik behar zer den adierazteko.
Hainbat urte geroago ere torturatzen jarraitzen dute.













Euskal Herrian Euskara ez gustatzea eta hitzegiten ez uztea ez al da ¿***ARU T ROT***?. Joan eta ikus Nafarroako buruzagien plana. Ikus Gasteizko udal gobernatzaileen, Ertzaintzaren eta zenbat pertsonai *Cervantino*ren jokaera. Ikus-ikus!




EUSKARA HILZORIAN





## KIROLA ETA TABAKOA

Zer da kirola? sasoi onean eta orekatua egoteko egiten den ariketa da kirola. Bakoitzaren buruarekin izaten den norgehiagoka besterik ematen denean suertatzen da kirolik ederrena. Kirola edo ariketa fisikoa burutzen duen gizakiak bere gorputza ezezik bere burua ere orekatua izanen du bizitza arrunt batean.
Hirurogeigarren hamarkadan lagun batek irakurtzea ere kirol mentala zela aipatzen zidan; egunero ordu erdi batez gutxienez irakurri behar genuela "geure buruak sasoian egon daitezen". Milurteko berri honetarako baliagarri suerta dakiguke esaldia baina ez dut uste orain irakurtzen dena lehengoarekin parekatu ahal denik.
Erretzaileari zuzendutako aholku bat: ERRETZEARI UTZI! Kirol ariketa-mentala egin. Gizakiak asmatu duen drogarik kutsakorrenetarikoa da tabakoa. Erretzen duenak, edo albokoa, gelakoa edo auzokoa, inguru guzia kutsatzen du. Erretzaileak guzti hori jakin badaki. Baina... harrapatua dago. Kirolarien antzera egin beharko luke, "sakrifizio" handia tabakoa uzteko. Osasuna dauka irabazteko eta bere etxekoekin eta auzokoekin ere bizikidetzan irabaziko du.

EZ ERRE MESEDEZ!





ANGULAK KAZOLAN

Jatetxe batean egingo lukeenaz amets egiten du.
Irudian gauzatzen du ezinaren ametsa.
Gartzela batzuetan margoak egiteko zailtasun handiak izan ditut. Beste gartzela batzuetan margotzeko gutxieneko materiala "azpitik" lortzen nuen, preso arrunten bidez, tabakoaren truke etab.
Oihalak egiteko oheko izarak baliatzen nituen, hauek zatituz. Sarritan harrapatzen ninduten pinturak eta pintzelak kentzen eta "parteren" bat jaso nuen.
Izarak moztuak zeudela konturatuz gero, zigor ekonomikoa (100 libera) jartzen zidaten.
Era guzietako zigorrak, isolamenduak, jaso izan ditut Frantzian.
Hala ere, bizipozak oztopo guztiak gainditzen laguntzen daki.

“SUKALDEA”

Estatu Frantseseko gartzeletan ia egun osoa ziega barruan igarotzen genuen. Teorian, ordu eta erdiko patioa genuen, eta arratsaldez beste hainbeste. Baina praktikan ordu batean mugatzen zen irteera hori. Gainera euria ari zuenean edo eguraldi kaxkarra zela, eguerdiko ordu batetan irtetzea suertatzen zitzaigunean, ez ginen ateratzen, bazkaltzen edo siesta orduan pausatzen geundelako.
Bizitza horrela, ia egun guztia hiru metro karratuko ziega barnean antolatzen genuen gure iharduera. Bai lo egiteko, bai atzera eta aurrera hankak mugitzeko, bai tresnak garbitzeko eta “pubela” gordetzeko. Gainean genituen arropak atontzeko ere leku txiki hori genuen.
“Olio labetxoa” deituriko sukaldea ere bagenuen. Espainiako gartzeletan ezin da ziegan jakirik prestatu. Ez dago labetxo-sukalderik, debekatua dago eta gainera ezin da txaboloan prestatu ahal izateko jakirik erosi. Espainian ez bezala, Frantzian onartua dago “sukalde artisaua” egitea eta txaboloan edukitzea. Sukalde sistema bat eurek saltzen dute, erregai bezala alkohol “irmo-solidoa”rekin. Modelo hau garesti samarra izanik, presoek euren sistema asmatu zuten, erregaia bezala olio arrunta erabiliz eta ehunezko pizgarriarekin. Sukalde Artisau honen oinarria sinplea da eta presoek “eredu-bariante” asko garatu dituzte.





*Horra hor nik egokitu nueneko “Labetxo” Sukalde preziatua. Makina bat jaki goxo prestatua... Ordu asko pasatzen genituen sukaldearen inguruan eta une zoragarriak jaki goxoari esker. Etxean egindakoak ziruditen jaki haiek.*

## "AMA LURRA"

"Ama Lurra" da gure herria. Gure Euskal Herriak Ama eta Amatxi asko ditu, Denok ditugu gurasoak, nebak, ahizpak, senideak, lagunak, auzotarrak... Badira oso bereziak diren Amak. Haien seme-alabek Euskal Herriaren alde borrokatzea erabaki zutenean gatazka politiko honen ondorioz torturatuak, erahilak, gartzelaratuak, desagertaraziak edota atzerriratuak izan dira. Ehundaka atzerrian...
Haien Amatxoek oso sufritzen dute, munduko iraultzaileen Ama guztiek bezalaxe. Euskal Preso batek badaki bere zamari eusten. Presoen gurasoak alai eta tinko ikusi nahi ditugu baina ez da beti horrelakorik suertatzen. Ama baten minak gu ere bortizki mintzen gaitu, atsekabetu ere. Gure bihotzak gauetan "zart" egiten badaki gu ere Ama Lur honen semeak garelako. Gure Amatxo asko injustiziak zigortzen ditu eurek maite dituzten seme-alabak besarkatu ezin dituztelako, bisitara joatea ezinezkoa dutelako, Presoak Euskal Herrian ez gaudelako.

Ez negarrik egin Ama, guk eutsiko diogu!





OUN SAAD, *masacre civil à Bentalha.*



## GARTZELAKO PASARTE BAT

Daniri buruz istorio txiki bat azaltzea otu zait. Zergatik? nirekin oso hurbil ibili delako lekuz leku eta bizitzako pasarte batzu oso erabakiorrak eta gogorrak pairatu dituelako. Zerrenda zabala dago euskal militanteen artean baina horien artean bat hartu dut: Dani. Gure ohituren aurka noa gainera, zeren, ez baita gure helburua, ezta asmoa ere, preso eta militanteak pertsonalizatzea edo goraipatzea.

Gose grebari buruz margo bat egin nuen eta orain istorioa idaztera animatu naiz.

Bada, hori eginen dut (eta Danik barka nazala) ez baitiot berari baimenik eskatu. Gizon honen lagun guztiek badakite nor den Dani. *Ipar-Ekialdekoa* (iparraldeko) militantea da bera.

Gure ibilbidearen nondik-norakoak zabalak izan dira eta "maratoi" luze honetan burkide ugari ezagutzea tokatu zait: politikariak, idazleak, irakasleak, langileak, baserritarrak, ekologistak, intelektualak etab. Denak jatorrak, denak borrakalariak. Horietako batzuk 21-22 urte egin dituzte preso, Praxkuk esate baterako. Beste batzu hilda daude: Txomin, Tomas, Argala, Pantu, Azkoiti, Xanti, Josu… Makatza, Otaegi… Emakumezkoak, gizonezkoak, mutilak… burkide ugari daude iheslarien zerrendan. Lagun bereziak ere baditut, bakoitza bere istorio mardul eta aberatsarekin, batzuk ezinduak, Roman, Peixoto. Denak abertzale sutsuak. Hauek denek istorio-oroimen bat merezi dute, Unaik, Txenpek edo Jakyk bezala. Burkide guzi hauek dute bakoitzaren istorioa, ikustekoa, baina Dani hautatu dut, azken urte hauetan hurbilen izan dudana.

## DANIREN GOSE GREBA.

Osnyko gartzelan elkartu ginen eta hango eguneroko bizitzan elkar komunikatzen genuen. Elkarrekin paseatzen, kirola egiten, bibliotekara joaten, petankan jolasten, eta ziega urrunetik (30 metro?) ere komunikatzen ginen.

Atxilotu zuteneko jipoiaren ondorioz txorkatila hautsi eta belauna zauritu zioten eta gaur ere errenka dabil. Kirola egiteko ezindua. Ez dago esan beharrik mutil ausarta dela, kuraia duena eta gardena dugula gure burkidea. Beti prest…Eskubideak arriskuan ikusiz gero "planto" egiteko prest…Eskubideak defendatzen, bide berriak irekitzen: "txoria" bezala libre izateko ametsa beti buruan…Nahiz eta ordu gutxi izan elkarrekin egoteko, ondo baliatzen genituen. Korsikako militante abertzaleak ere han ziren gurekin. "Talde" ederra, beraz, frantsez gorrotoari aurre egiteko.

Gartzelako horma eta zailtasun guzien gainetik komunikatzeko erak eta bideak asmatzen genituen. Ezin ahaztu abentura txikiak, 30-40 metrotara sokaz "teleferikoan" leihotik leihora pasatzen genituen jakiak, (tortilak, espageti kazolak...) Asteroegiten genuen afari txukunen bat gure ziegan prestatua: pasta, tomate saltsa pikantea eta oilaskoa nahastuz…Gartzelako bizitza gogorrari buelta emateko: ipuinak baretzeko eta ametsak alaitzeko. Gartzela bakoitza ezberdina den bezala, gure bizimoldea eta borroka ere gartzela bakoitzeko bizitza eta arazoetara egokitzen da preso kolektiboaren printzipio eta oinarriak mantenduz.

Sarritan egin diren borrokaldiei esker presoen eskubideak eta "onurak" bermatzea lortu izan dugu, nahiz eta presondegietako politika errepresiboak dituen arau eta erreglamenduak, presoak izorratzeko izan. Borroka molde horietako bat gose greba da. Preso asko dago hamar-hogei urtez preso egonik, dozenaka gose greba egindakoak, ondoren euren osasuna erabat suntsituta geratu zaielarik. 1998ko suetenaren ondoren, 1999ko urrian Euskal Presoen kolektiboak euskal gizarteari borroka berri baten hasiera agertu zion, non Presoak Euskal Herrian aske izatea, Presoen eskubideak, denok Euskal Herrian biltzea eta gaixoak askatzea etab... eskatzen genuen. Egoera politikoak hala exigitzen zuelako, Eraikuntza Nazionalean gure parte hartzea eskatzen genuen. Marko honetan hasi zuen txandakako Gose Greba kolektibo osoak, burkide batzuek indarrak galdu arte, beste batzuk muturreraino eraman zuten gose greba. Hauetako bat Dani izan zen.

Gose Grebaren borrokak aurrera egin ahala, gizartean sortzen duen oihartzuna moteltzeko, arerio guziek (gartzelako zuzendariek, prentsak etab.) gure borroka manipulatzen saiatzen dira. Baina guk badakigu gure sufrimenduak iraun ahala, gure herriak gose greba zer den badakiela eta kontzientziak esnatu eta astintzen dituela, ez baitago borroka paketsuagorik. 2000. urteko urtarrilean, Danik jada hilabete





zeraman gose greban eta Fresneseko ospital militarrera ez ote zuten eramango beldur zen. Idazki baten bidez gartzelako arduradunei Fresneseko ospital militarra ez zuela onartuko jakinarazi zien eta bera mugitzekotan, ospital zibil batera izan beharko zuela.

*LE JEUDI 20 JANVIER 2000ko* "idazkia"

*Mon ètat de santé va bientôt nécessiter une hospitalisation. De ce fait, je mets à nouveau en garde les autorites pénitentiaires et les service médical de la Maison d´Arrêt du val d´Oise que je m´opposerai a mon transfèrement à l`Hôpital de Fresnes et à toute assistence mèdicale dans le cadre pènitentiaire de Fresnes. Ètant doné qu`a à la maison d`arret de Fresnes s`est á peine si les détenus joussent de la gualité d`hommes; ils sont couverts de mépris et végètent dans la fange de l`ignominie et de l`humiliation. Des conditions abjectes de l`avilissement.*

*Respectueusement. D.D*

Bitartean presoen borroka aurrera zihoan. Dani berrogeigarren egunean zegoen eta aurrera jotzea erabaki zuen. Ihar zegoen, begi zuloak sakon baina tinko. Sendagileak aztertzen zuen eta egoera larria zela eta ospital militarrera (Fresnes) bidaltzeko presioak areagotu ziren, txantaiatzen zuten eta egun gutxitara Fresnesera bidali zuten. Fresnesko ifernuan, ziega zikin batean sartu eta berak ospital zibil batera eramatea eskatzen zuen. Bitartean, Dani, han lurrean, arratoiak bezala, egunero xantaia eta mesprezuakin. Egunak aurrera zihoazten eta Dani ozta-ozta mantentzen zen, erorketak, zorabioak, bisitalekura joateko indargabe, oso txarto zegoen eta berrogeita hamargarren eguna gose greban igarota, ur minerala ere kendu zioten…

Daniren albisteen zain ginen denok. Borroka horrek, guri urduritasuna sortzetik, senitartekoei oinaze larria sortzen zien: edozer gauza gerta ziezaiokeen. Egonezin hura luzeegi egiten zitzaien/zitzaigun…Presio handia jasaten zuen Danik, baina mesprezu honek indarrak berpiztu zizkion: *eraman nazazue ospital zibil batetara edo hemen geratuko naiz! Hil arte!*

Une latza zen Euskal Herri osoarentzako, Euskal Militante Abertzale bat hilzorian zegoen denon eskubideak aldarrikatzeagatik eta legea betetzeko eskatzen, eta egunak aurrera, 54-56 egun Gose Greban, eta etsaiaren ezpata bere gorputz gainean.

Euskal Herrian mobilizazio handiak ari ziren egiten. Iparraldean ere egundoko manifak, enkarteladak, prentsaurrekoak, politikarien hitzorduak, sinadura bilketa…"Presoak Euskal Herrira" zegoen denen ahoetan. Denak hasi ginen mugitzen, protesta egiten, Osnyko preso arruntak eta kortsikakoek ere Daniren alde egin zuten protesta idazki bat idatziz eta janariari uko eginez. Borroka luze hura bere emaitza ematen hasi zen; inoiz ez bezala hasi ziren prentsan, telebistan, irratian... euskal presoen egoeraz eta Gose Grebaz mintzatzen. Daniren egoera larria eta preso kolektiboaren eskakizunak aipatzen zituzten. Gizartea mugiarazteko borroka muturreraino eraman behar al da?

Une hauetan "Instituciones Penitentieres" delakoak eta frantses gobernuak ere erabaki larria hartu zuten: Dani hiltzen uztea.

Denok dakigu Europako Estatuek horrelako kasuak ekiditu dituztela, eta ekiditzeko azpiegitura sanitario militarra dutela; indarrez sartzen dizute jana (suero) eta kitto! Baina besterik gertatu zen Daniren kasuan: erabat "abandonatu" zuten. Frantses Estatuko Gobernuak Daniren heriotza asumitu eta horri erantzuteko Justizia Ministeritzak idazki bat (gutun ofiziala) prestatu zuen eta Daniren senideei bidali. Galdera bat geratzen da airean: zergatik utzi zuten Dani hilzorian? zergatik idatzi zuten idazkia Daniren heriotza bere eginez? zergatik bidali zieten gutuna senideei Dani oraindik bizirik zegoela? Dani hil zela zerion honek, senideak lur jota utzi zituen, baina kasualitatez, ordu berean jakin zuten Dani bizirik zegoela, abokatuekin egon berri izanik, azken finean, gezurra zela gutunaren albistea.

Bitartean Danik bere borroka aurrera zeraman, bihotza ahul, burua argi, hirurogeigarren eguna jateke, indarge lurrean luze, bere eskaria: ospital zibilera! Presoak Etxera! Eta azkenean edo azken unean mediku eta abokatuek ospital zibilera eramango zutela esan zioten. Hirurogeita bigarren egunean harat eraman zuten, horrela onartu zuen gose greba uztea eta hirurogeita hirugarren egunean hasi zen salda epela hartzen. Bere erraiak idortuak izanik, sendagileek lan handia izan zuten gizon iharra artatzen. Era honetara irabazi zuen eskakizunetako bat: ospital zibilera joatea. Frantses gobernuak hil nahi zuen, baina Danik ez zuen hil nahi, gure eskubideak errespetatuak izatea lortu nahi zuen eta bere garaipena lortu zuen. Inork ez daki nola iraun zuen hainbeste egun (63). Gose greba batean luzatuz gero edoizen unetan bihotza gera daitekeela da arazoa. Danik hamar egunetik gora egin zituen kinka larrian, hil edo biziko egoeran eta denok poztu ginen Dani berriro bere onean ikustearekin.

Ospitaleko egonaldi luzearen ondoren berriro ekarri zuten Osnyko txabolora eta egin genuen lehenbiziko gauza afari bat prestatzea izan zen: patata tortila on bat tipulaz ornitua. Horrela hasi zen berpizten. Esango dut datu hau ere herritar askok jakin dezaten: gose greba baino luzeagoa izaten dela errekuperazioa. Danik "egur" handia jaso zuen eta hiruzpalau hilabetez ibili behar izan zuen umeak bezala papilakin, "dodotisa" eramaten, pilula tratamenduakin, hortzak erortzen, bista lausotua, burukomina, zorabioekin, ilea erortzen, indarge eta kezka handienarekin: libidoarena. Ez zen izan, beraz, ahuntzaren gauerdiko eztula! Gose greba azken tresna da, gose grebaren ondorioak bizitza guzirako markatzen zaitu.

Borrokaren alde txarra hor geratzen da, eta alde ona, berriz, herritarrek eskaintzen dizuten laguntza eta mobilizazioa





edo senideen eta lagunen maitasuna da. Hala nola, dagozkigun eskubideen defentsa egitearen duintasuna.

Daniren inguruan igaro ditudan eta partekatu ditudan une alaiak eta larriak bi margotan azaltzen dira. Idazki honen laguntzaz, argitasun gehixeago ematen ditut, gartzelako bizitzaren pasarte "gazi-gozoak". Bizitza bera nonahi izanik gogorra da, eta guretzat barruan egonik gogorragoa. Hala ere, bizipoz izugarria daukagu eta bizirik iraun nahi dugu. Horretarako egin izan dira eta eusten diegu borrokamolde guzti hauei: duintasunez bizitzeko. **Joseba**

PILAR, IRATXE ETA ABOKATUA (GOSE GREBAN)






AUTOMARGOA (GOSE GREBAN)

ETORKINAK



Afrikako etorkin asko ikusi ditut gartzelan eta "Aingeruen" aldetik oso mesprezu handia izaten dute. Kalean ere mesprezu eta esplotazio ugari izaten dute, oso baldintza txarretan bizi dira.





GARTZELAKO PAISAIA EKLIPSEAN



Frantziako gartzela bateko patioan zuhaitzak aurkitzea suertatu zait. Harrigarria izanik ere asko estimatzen genuen. Udaberri eta Udan txorien babesleku izaten zen. Eguzkiaren "eklipsea" gertatu zen urtean otu zitzaidan margo hau egitea. "Gartzelako paisaia" eklipsean.

TORTURAREN MAMUA I



TORTURAREN MAMUA II



Hemen orduak ez dira izaten
Lasterketako urratsak
Aurrera nekez egiten baitu
Erdoildutako orratzak
Begi-zuloan itsasten dira
Akiduraren lorratsak
Geldotasunaren hatzak
Txit estutzen dizkit galtzak (bis)
Zenbat denbora upel beretik
Edanez trago garratzak
Nahi baino lehen ez dira etortzen
Amestutako arratsak. (bis)

Askatasuna kaiola baten
Neurrira nahi dute-eta
Eguneroko jakia dugu
Eskubide zapalketa
Seguritate neurrik aitzakia
Noiz nahi dago mihaketa
Egurraren errezeta
Gainera trufa eta iseka (bis)
Kalbario hau pasa beharra
Ez dugu ez berriketa
Kartzela bera bihurtu dute
Sufrimenduaren meka (bis)

Gutxien uste dugun unean
Dator tristuraren zama
Estualdiak trumoien antzo
Lehertutzera narama
Begiak malkoz blaituirik ditut
Negarrari nago emana
Askatu behar dut dana
Bihurtu ez dadin drama (bis)
Zenbait unetan oreka aurkitzen
Izaten da nahiko lana
Horrelakoetan gogoan zaitut
Nire bihotzeko ama (bis)

Itomenaren zirrikitua
Arnasa hartzeko adina
Iratzarturik amestutzeak
Dakar bizi-alegina
Irudimena hegaldatzen da
Atzean utziz samina
Bizi-pozaren lagina
Bihotzeko krabelina (bis)
Izar artean ze distiratsu
Keinuka ilargi sorgina
Bere altzoan eramaten nau
Ia gauero Agiña (bis)

Euskal Herria zuzenduz doa
Azken bertsoaren soka
Atxiloketak, tortura eta...
Atea egunero joka
Euskaldun oro legez kanpora
Inkisidoreak bota
Zigor-legeen porrota
Nola gaituzten gorrota (bis)
Bolada latzak pasatu arren
Batzutan albo-alboka
Euskal Herrian aurrera doa
Askapenaren borroka (bis).

X. Aranburu "Xomorro"

Korsika, Katalunia, Bretainia,
Euskal Herria, abertzale
gudarien aurka;
Herri abertzaleon aurka
gogor diraute
komunikabideak.
Noren esku daude
komunikabideak?



GERLA MEDIATIKOA

Hainbat kazetariri aurre egiteko asmatu nuen irudi hau. Garai haietan prentsa, irrati eta komunikabide gehienek gogor iraintzen zituzten Herri Askapenerako talde armatuak eta ez armatuak. Aski zen Abertzale gisa Independentzia aldarrikatzea eta indar errepresiboei aurre egitea euren atzaparkada nabaritzeko. Komunikabideen buruzagi-zuzendariek 80. hamarkadan urrats garrantzitsua eman zuten, Estatu espainoletik hasita Europako beste Estatuetan ere, Gobernu eta Estatuekiko loturan zutabe sendo bihurtzeko. Ezin ahantzi Espainiako Barne Ministroak eta prentsa zuzendariek egin bilkurak eta jarri amarruak. Erakunde Armatua edo Gerrila erresistentzia deitzen zenari, "mafia y Grupo Terrorista" deituko zioten aurrerantzean. Eta Mogimendu Abertzaleari, "Fanàticos del entorno violento" etab.
Denok dakigu prentsak duen indarra "Botere Faktiko" gisa. Hala ere, garai hartan gaur egun baino independenteago ziren. Gaur, Justizia, Kapitala edo Eleiza bezala, prentsa ere oso lotua dagoela Estatuari uste dut. Orain hamar-hamabost urte talde Armatuaren aurka egiten zuten lan zikin berbera egiten dute gaur Alderdi eta Mogimendu edo antolakunde Abertzale Demokratikoen aurka. Horra hor Egin egunkaria itxi zutenekoa, HBko Mahai Nazionala atxilotu, KAS, Ekin, Xaki, Segi, Haika, HB, EH, Batasuna, AAB eta Askatasuna legez kanpo utzi dituztenekoa. Erakunde sozio-politiko guztiz demokratikoak izan arren, egitasmo abertzale independentista dutelako, legez kanpo utzi dituzte.
Egoera berri honetan aurkitzen gara 2002ko irailean: Batasuna eta enparauak legez kanpo gaude. Manifestatzea ere debekatua dugu, Ertzainak zipaio lana betez Euskal Herritar zati handi bat zanpatzen ari dira. Batek daki datozen hilabetetan zer gertatuko den, behar bada irudi eta izkribu hauek ezin izango dira argitaratu. Salbuespen egoeran gaude.
Egun hauetako egunkarian abertzale zahar historiko baten esaldia irakurri dut: "Oraintxe da ordua. Autodeterminazioa ala hil!".
Berriro ere hormetan idazten hasi beharko dugu, frankismo garaietan bezala:

*Askatasuna ala hil!*
*Gora Euskadi eta Askatasuna!.*

*ISTRIPUA I*



"ISTRIPUAN" HIL DIREN GUDARIEN OMENEZ.

Gu, beti preso, han edo hemen, nonnahi.
Gure senideak beti bidean,
gu ikusteko
milaka Km autoz,
trenez, metroz, taxian, lagunekin...
kilometroak milaka
eta urteetan bueltaka.
Gu, berriz, hemen, desterruan,
haien zain...

Guk ere Kmak egiten ditugu
Egunero, aldiko 7 Km,
aldizka-aldizka,
astean lau aldiz zazpi Km = 30 Km.
Senideengan pentsatuz
haiek gu bezala,
guk haiek maite ditugulako.

Guk hilero 130 Km korrikan
zapatilak urratzen ditugu.
Senideek 3000 edo 4000 Km
hilero egiten dituzte karreteran,
"istripuaren mamua" alboan dutelarik.
Senideek eta guk mamua alboan
izaten dugu; astero, hilero, urtero...
istripuaren "mamuaz" pentsatzen
urtean 1500 Km xokoan
zapatilak urratzen egiten ditut
senide haiekin pentsatuz, neu orekatuz,
eta nire senideek ongi
aurki nazaten,
haiek ni bezala,
nik ere haiek
ongi ikusi nahi ditudalako.

Denok egiten ditugu milaka kilometro
"barrutik" sofrituz,
elkar atxikiz, maitasunagaz,
eta mamuaren beldurra,
nahiz eta tarteka errepidean
istripu latzen batek urratzen gaituen.

Garesti ordaintzen dugu gartzela.
Kario irtetzen zaie
bisita bidaia;
gauez eta egunez,
hortzak estu,
bideak luze,
betondoak ilun, bai;
larrutik ordaintzen dute senideek,
baina, hala ere, bihotzak zabal dituzte...
Guk badakigu
Euskal Herriagatik dena ematea
merezi duela, harik
eta libro
ez gareno.



*ISTRIPUA II*

Presoen senideek bisitara joateko milaka kilometro egin behar dituzte. Hogeinaka urtetan bidaiatzea ere tortura bat da.

ISTRIPUAN HILDAKOEN OROIMENEZ.



Goizetan jaiki orduko pizten dugu irratia edo telebista azken berriak entzuteko asmoz baina une oro iragarkien "txapa" sartzen digute kolkoraino. Bestelako albisterik ere izaten da: ia egunero protagonismoa hartzen duten istripuak. Karretera edo autobietan gertatzen diren milaka eta milaka istripuen berri entzuten dugu eta hor bide baztarrean hil dena auzoko bat ez bada ez gara aztoratuko, eta okerragoa oraindik, normaltasunez entzungo ditugu , gertakari normal bat bailiran.

Mundu moderno honetako gizakiak asmatu dituen tramankulu, auto, "robot", Abiadura Handiko Trena, autobide eta abiadura guzti horietan aritzen gara ziztu bizian, "heriotza gibelean" daramagu batere pentsatu gabe. Izugarri arriskatzen gara egunero "ohikotasunez" heriotzak axola ez baligu bezela.

Aitzinako mendietan, gerla Inperialetan, Kolonietan eta Mundialetan hiltzen ziren herritarrak, euren gogoaren kontra hil ere. Orain errepideetan hiltzen dira.

Hirugarren Mundua deituriko eremuetan goseak eta HIES izurriteak akatzen dituztenak ugariago izan arren, gure "Estatu Neoliberaletan", garapenaren obsesioan, autobide eta errepideetan hiltzen gara. Euskal Herria ere hortxe dago, erdi-erdian kokatua, Europako bi Estatuen artean, Europatik Afrikarako komunikazio eta igarobide egiten dugularik, milaka kilometro autobide eta errepide erdi-erdian zanpatzen gaituztelarik.

Badugu euskaldunok beste "zerga-ordain" bat garesti ordaindu beharra ere: Euskal Herriko milaka abertzalek milaka kilometro egiten dituzte aste buruetan Estatu espainol eta frantsesean zehar, sakabanatuak dauden seiehun Euskal Preso Politiko baino gehiago bisitatzeko. Gobernu Espainol eta Frantsesaren mendekua gure senideek ordaintzen dute. Ibilbide hori da "zerga-ordaina", honek sortzen ditu istripu ugari presoen senideen artean.

Margo-irudi makabro samarrak izanik, abstraktuak eta kolore ilunak gogoetarako eta pentsatzeko grina “sortzen” du. Nolabaiteko garrasia da.

ESPETXEA
Joseba, 1993ko uztailean

Txoriak dabiltza kanpoan
begira nago leihoan
denbora pasa horrela egonen naiz
aspertzeko giroan.

Ziega hontako airea
ez da gozoa ordea,
burnizko sare tartetik dator
kalte egiten duen kidea.

Leiho madarikatua
kristalezko blindatua
gainetik burniz beteta dago
babestua da nahikoa.

Zelda hontako atean
begi bat dago atzean
zarata handiz itxiko dute
gaizki afaldu ostean.





"MINIPATIO" MITARD



"GARTZELAN NORAEZEAN" I



Mundu guztiak daki denok ez dugula berdin pairatzen gartzelako errepresioa. Batzuek psikologikoki hobeto eusten diote. Preso denok gaude leku berean, erreglamendu berdinekin, "Aingeru" berberekin. Denok ditugu zirrikitu berdinak artizarra ikusteko baina presoek ez dute begiratzen. Presoek elkar laguntzen badakite. Elkar kutsatzen dira ere berdin. Egonezin horretan "arima" eta iparra ere galtzen dute gero noraezean geratzeko.






## “GARTZELAN HILZORIAN” II

Kalean nabarmentzen ez dena gartzelan agerian daukagu. Hemen kaleko arazo berberak daude, kalean zituzten gaitzekin jarraitzen dute. Drogazaleek amets bakarra dute: eguna igarotzeko dosia lortzea. “Ez dute” goserik, heroina eta pilulak dira euren elikadura. Pekuliorako jasotzen duten dirua ere euren dosia erosteko erabiliko dute. Hori xahutzen dutenean, zuri eskatuko dizute (mailegua) eta onean lortzen ez dutenean beste moduan erlojua “fidatuko dizue” (edo “1.500 por 1.000” eskaini )... zeu ere nahigabean nahasten zaituzte, ez dute argi izpirik ikusten, “bitxoa” dute, elkar hilko lukete drogaren bila, ez dira pertsonak, ez dira presoak, “lotuak” dira irtenbiderik gabe. Preso hauen tresna preziatuenak hauek dira: “pintxoa” (ganibeta), zilarrezko papera, pila txikiak, Winston paketearen azala eta metxeroa. Lanabes-tresna hauekin beste osagaiak ere beharko dituzte eta egun santu guzian daude: “¿me puede dejar el boli?” esaten... Eta noski, dirua dutenean, “zaldia”, hauts txuria, pilulak edo zernahi hartuko dute hilzorian bizitzeko.

## "GARTZELAN IRAUPENEAN" III

Irudi bakar batekin ezinezkoa da nahi duguna adieraztea. Nire lagunak "katastrofikoa" dela dio. Beste preso batek bere musika tresna ikusten du. Beste batek kolorean interesatua begiratzen dio... Edonork ikusiko du zirriborroa.

Margo eta marrazkiek ez dute zer diren azaldu beharrik, eurek esan beharko lukete oihalean duten marra etakeinuekin. Hala ere, marrazki bakoitzak istorio bat darama, bizitzako pasarte bat, hemen sarritan gertatzen den imintzio aspergarri bat, edota gure ametsak, sentsazioak, etab.



"*GARIBALDI*"

Badaude preso bakar batzuk drogamenpekotasunetik askatzen direnak. Horietako bat italiar hau da, "Garibaldi". Iraultzaile famatuaren izena ezarri zioten eta honela deitzen diogu.

Preso honek bere bizitza izorratu eta bere amari ere iruzurra eginik, urte batzuk gartzelan iraunez lortu zuen droga uztea.

Zenbat elkarrizketa, jokoeta parre egin ditugun elkarrekin. Beraz, ezin da preso guztiak berdinak direnik esan.




GARTZELAKO IRUDIAK







FRANKY ETA RIOJA




"FRANKY"

"FRANKY" bezalakoak ere badaude, egun osoan jan, edan eta lo besterik egiten ez dutenak. Edozer jaten dute, edozer eskatzen dizute, dirua ere, eta "errespetugabeak" izanik (beste askotxo lez) kuxidaderik ez eta gartzelako bazter guziak "phaloides" onttoen koloreko "gorro" berdez josita uzten dituzte. Patioan ezin da lasai ibili, hanka non ipintzearen beldur. Batzuk ez lirateke gartzelan inoiz sartu behar, modu hontako gizakiak euren leku propioa behar lukete. Zikina zikinekin eta kitto!

Gizaki bat hainbat urtetara zigortzen dute eta horrelako zama gehigarria izanik, pentsa ezazue zigorra nola astuntzen den: gizaki arriskutsuak, gaixoak, zikinak, lapurrak, beti diru eske eta eske ari direnak, zaratatsuak, beti enbarazu egingo dizuten erretzaileak... Nahasmen kosmopolita honen aurrean irtenbiderik onena: tentuz ibili eta umorez hartu!



MARKITOS

Markitos etxe batera lapurtzera sartu zen, sukaldeko armarioan aurkitu zuen kazola bete janari goxo jan eta ardoa edan ondoren, "salako sofa" gainean lotan geratu zen harik eta bertan atxilotu zuten arte.
Gartzelan ere jan eta lo egitea du xede.






## GARTZELAKO MARGOAK

Gartzelako saloian edo egongelan egonezin handia izaten da batzuetan, eguraldiaren araberakoa. Iskanbila, zarata edo alperrikako hikamika. Egongelaren alde bakoitza ezberdina izatetik presoen egoteko era ere ezberdina da. Hor jaso ditut mahai gainean pausatzen zen Pedro Errioxaren "zenbait instat". Begiratuz gero, badirudi nahiko molde egokian pausatzen dela. Ez beti. Eta ez denak. Nolabait marraztuak izan arren, metadonakin eta pilulaz lepo dauden preso ia denak era dramatikoan pausatzen edo etzaten dira: mahai alboan brast, albora besoak tolestatuak, aulkian luze, gora begira, ahoa zabal, begiak eroriak, adurra dariela, mahai gainetik okertua, zintzilik, zintzurra galdua eta denboraren zentzu barik. Bakoitza bere "munduan". Batek "telebista bolumena" ahal duen guzia altxatuko du. Beste bazterrean dagoen ijitoak irrati-kaseta jarriko du indar bizian eta alboan, mahai gainean luze etzana dagoenari, axola ez dionez, lozorro berean jarraituko du.

Zilo batetik egongela hau grabatzerik balego baliogarria izango zen ikastetxeetako gazteen hezkuntzarako. Tabakoz, alkoholez, drogaz eta beste gehiegikeriaz marra igaro dutenen "filma" izango litzateke. Gehiegikeria eta injustiziaren Egongela da hau.



DROGA ERRETZAILEAK.



## DROGAREN MENPEKOTASUNA

Irudi honek garbi azaltzen du drogazaleen eguneroko hitzordua. Ez da txantxetarako. Orain dela hogei bat urte kokainari lotua zegoen ezagun batek zera esaten zidan: "Drogamenpekotasunari kanpotik kritikatuz ezin da deus konpondu, ez dakite horrek duen lotura, indarra, beharra etab. Hori zer den jakiteko barnean eta zale izan behar duzu".
Heroina, kokaina, pastilak, "edozer" erretzen dute urrupatzeko.
Drogazaleen bizitza tristea, ez du parekotasunik.




FLEURY KIROLDEGIA






## GARTZELA GIROAN

### "ILARGIARI SO, KEINUA... IHESALDIRAKO"

Andere zuria
zain naukazu gauero
zirrikituak
ez itxi gero!
arnasa hartuz
hurbiltzen nauzu
uneoro.
Aldatzen zoaz
zeure aurpegi biribila osatu arte,
ilargi betea ala
emazte gaztea?
biak zaudete eder.
Laino ankerrik
gabe
zaude argitsu
eta ni alaitsu,
zure gardentasunagaz
dakarkidazu sosegua,
heldu da ordua;
bion artean eginen dugu
ihesaldi entseiua...



"MOD.3eko PATIOA"




"MOD.5eko PATIOA"

3. eta 5. moduloak berdintsuak dira baina barne arau oso ezberdinak ezartzen dizkigute.




MIXERIA

Askotan ikusi ditugu presoak patio bazterreko "zigarrokinak" biltzen zelabaiteko zigarrotxoren bat egiteko. Mixeria dute, eta benetako tristura ematen du holako kinuak egunero ikusteak.
Drogazaleek sofriten dutena izugarria da baina negar egiteak ez du balio.
Euskaldunok ere izurri hortatik ez gara libratzen.



"GAZTE BURU ARINA"

Gartzelan aurkitzen duzunean gazte drogazalea, izurrietaz kutxatua, bizikidetzan zikina eta alboan aspergarria... alde batetik izura ematen dit eta, bestaldetik, penagarria da.



ENE LAGUN B-REKIN

Droga kontsumitzen dutenek asko sofritzen dute. Guk ere, kontsumitzen ez dugunok, une latzak igarotzen ditugu, ez gara libratzen gartzelako sofrimenduetatik.

"KANGURO TXIKIAN"

Diligentzietara egiten ditugun bidaiak oso larriak izaten dira, mehatxuen tentsio izugarria alde batetik eta zorabiaturik, goragaleari eutsi ezinik, eskuak atzean, ordu luzean izaten dugun ametsgaiztoa, izerditan blai ailegatzen gara kalabozoetara.





KANGUROAN
ADIN TXIKIKOA

Euskal Herriko gaztetxoek ere badakite tortura, "kanguroa", Audientzia Nazionala, gartzela eta dispertsioa zer den.

PICASSOREKIN FESTAN



EROMENA





RESIDENCE DE MADAME GUIGOU

Osny gartzelaren eskorta. Gartzelen barrunbetan beste gartzelak daude.

AZTARNA BILA.(Xabier Tximeno)

Kartzelako bizitzaren ortzimuga laburrak ez dio errealitateari tregoarik ematen.

Ikusten dena baino ez dugu islatzen gure margo zirriborroetan. Gogorra? nazkagarria? tristea dela? ez da harritzekoa, hauxe baita tristezi kolektiboaren mundua. Edo inframundua?.

Halaber, errealitatearen gordinkeriak ez die lekurik kentzen irudimenean ondo gorderik ditugun gogozko irudiei: "*nahiaren uholdea gelditukoduen harresirik edo kartzelarik ez dago*".

X.TXIMENO







"*EMAGALDUAK*"

Gartzelako bizitza mundu errealetik isolatua dago. Gartzelan gaudenok, kalean dituzuen gauza guztien falta somatzen dugu. Gabezian gaudenean irudipenak dabiltza eta ametsekin asetzen ditugu gure beharrak. Liburu erotikoek ere betetzen dute lekuko bat gure ziegetan. Amets erotikoak izan eta pintzelaren bidez gauzatzen ditut horma zabalean, bizitzaren pasarteak balira. Batzuetan (gorderik beharko lukeena, isilpekoa, sekretu azpikoa, desiratzen dena, egingo lukeena, baina azaltzen ez dena) "tabu" diren zenbat gauza gartzelan doaz dena gainditzen.
Margoetako emakume biluziak; ez da mesprezua, alderantziz, estetika gustoa baizik, emakumeen edertasun fisikoan galtzen dira gure ametsak.
"Emagalduen" bizitza bestelakoa da. Emagaldua edo puta, egunero ahotan erabiltzen dugun hitz "zikina"



da eta txarkeriaz iraintzeko denok erabili ohi dugun hitza. Emagaldua inork ondoan eduki nahi ez duen emazte zatarra da. Emagaldua gizarteko maila sozial guztietan dago. Gizakien historia guztietan zehar azaltzen da baina inork ez du onartu nahi izaten haietako izan dituen harremanak.





Emakumeen gartzelako preso gehiena "Emagaldua" da, droga eta Hies izurriteak harrapatuak daude, beste preso arrunt asko bezala, baina gizakiak dira. Munduko ofizio zaharrena duten emakume eta trabestiei eskaintzen dizkiet iruditxo hauek.

SEXUALITATEAREN MITOA










SUGEA ETA SAGARRAREN SEXUA

Gozoki eskainia agertu zinen nerabezaroan
beldurrez hurbildu nintzen, kontradikzio ugari
fruitu adoratuan.

Gezur, gorapen, irudi larregi
goxoenean agian mingotzena bihurtu
zeruaren esperoan sentimenduen laberintoa
sakonago, harrapatuago, sartuago
kaiolan arnas estuan.

Zure zain, errealitatea aldatzeko gaitasun
azala nahastuz amodioan, zerikusia?
falta zarenean zenbat amestu !!!
aurrean aurkituz lar errespetatu
tabu, aran, inkisizioak sormindu.

Garaile gabe zure jolasean
galtzaile beti ikasle
buruan eta gorputzan ugazaba.

Obsesio bihurtu zaitezke
lar bider ezindua zagozenean
zure presentzia agertuz lo ezinean.

Larregitan erantsi,
aldaragarri bestetan.
Goxotasunean eztandan detonagailua
sahiesten saiatu diren arren
deboto nauzu.

Zure irudigile eta ezin inoiz
esangura guztia margotu.

Umiltasunez, nahikoa zait
zerbitzatu, atzamarrekin morroi izan
gazte nintzela hurbildu nintzen
ezagutu nahian zakar eta presaka
sutats pizten zenidala.

Orain katuka hurbiltzen noa
astiro, zure aurrean
ikasi dudan bide askean;
har gabeko sagarraren altzora.

Kepa A.



ZALANTZAZKO PENTSAMENDUA

Iparraldean ohartu nintzen
ordura arte ez nekiela amodioa zer zen.
Itsaso beste aldean ohartu nintzen
Iparraldean ez nekiela amodioa zer zen.
Hemen barruan ohartu naiz
itsaso beste aldean ez nekiela amodioa zer zen.
Hemen barruan amodioa ezagutu baitut
bere osotasunean.
Amodioa... Hemendik igaro gabe
dastatzen ahal denentz
galdetzen diot neure buruari.

Askatasunerantz bidea latza da
baina bidai horrek eskaintzen diguna
zoragarria ere, ordaindu ezina.

Mikel A. (Jaengo espetxean)





IZEBA



AMATXI



AMONA JOSEFA






TRENEAN

ENE LAGUNA

Parisera trenean. Amaierarik gabeko bidai luzeak eta gau-pasak pairatzen dituzte gure senideek aste buruetan.







ARIKETAK. MAISU HANDIEI KOPIATZEN

Leandro sendagilearengana joan zen, arnasestuka eta lo egin ezinik zebilelako. Sendagileak ondo itaundu ondoren arakatu eta gero esan zion, "min bizia" zuela oso hedaturik eta urte batzuetan iraun nahi bazuen, zer nolako bizitza egin behar zuen jarri zion paper handi batean idatzita.





**- BAINA BRAULIO! ZERGATIK GERTATU ZAIT NIRI? NIK EZ DUT ZIGARRO PURO ASKO ERRE, EZ NAIZ MOZKORTZEN, EZ DUT KONTSERBA LATARIK JATEN... ETA NIRI...**
Leandrok



**BAINO TOMATE TRASGENIKOAK JATEN DITUZU, ETA PIPATU, ERRE... ESAN NIZUN EZ ERRETZEKO!**
Brauliok

B R A U L I O
K O R T A Z P I K O
B A S E R R I T A R R A
L E A N D R O
E R R O T A T X I K I
B A S E R R I K O A

Leandrok ez zuen "piperrik" ulertzen eta dena bai..., bai ondo dago..., bale, egingo dut, esan eta bizkor-bizkor joan zen bere lagunminarengana; Brauliorengana:

- *Aizu, Braulio! Sendagileak zerbait larria daukadala esan dit eta hemen jarri du dena idatzia, irakurri mesedez...*

Brauliok bazekien erdaraz irakurtzen eta papera eskuan (bera ere zurbil-zurbil) hasi zen irakurtzen:

*EL PACIENTE LEANDRO KUTUKUTZAGA*
*Iditegi; "Minbizia Gorriña" hedatua du". Bularrak hartuak, eztarrian behera kiribildua, eta gibel zatia txirikordatua," puska bat usteltzeko zorian. Neurri gogorrak hartu ezean bihotza ere laister "atrapatua" izango du. Oso epe laburrerako bizitza geratzen zaio.*
*Biziirautea nahi baduzu horra hor egin beharreko eguneroko dieta:*
*•Janari edari debekatuak: Ardorik ezta probatu ere, sagardoa, biterra, eta txakolina ere ez.*
*•Tabakorik ez erre, fitxik!*
*•Koipeak, urdaiak, lukainkak, txistor, solomo, txarranka, txerriki eta koipeak "fuera!*
*•Egunean hiru aldiz jan behar du: Baba-beltza, garia, garagarra, oloa, artoa, arbia eta azelgak azal eta guzi lapikoan egositak, salda eta guzi. Gatz eta olio gabe.*
*•Frutak egunero: sagarrak, mizpirak, gereizak, aranak, tomateak ondo garbituak.*
*•Edan: egunean hiru pinta METALUR FRESKUE.*
*•Baserriko labean egindako ogia, sahi ta guzi.*
*•Leihoak zabaldu eta egunero ehun aldiz, arnasketa ariketak, aire freskoak...*

*Dieta hau egin eta 6 hilabetera etorri kontsultara nola zauden ikusteko. Ordurarte.*

*Doctor Cantalapiecua.*



NATURA, PAISAIA ETA EHIZTARIA.

Udazkeneko hegohaize epelak astintzen nau eta nire Herrira narama oroitzapen bila, gazte garaietako udazken haietara. Nire begiek gora ko bidea hartu dute, txorien ibilbideari so… Gogoeta hau margora daramat, Naturarekin batera dabilen "Ehiz fenomeno" eta bizitzako pasarte, oroitzapen, eta nolabait, lagunarteko une haien bila. Naturaren edertasuna lapurtzen digute, faltan dugu. Lagunak mendian (behar bada usotan), onttotan ibiliko dira eta guk malenkoniaz amesten dugu udazkena.

Ehiztaria nintzen, baserritar asko lez. Gaur ere ehiztari ugari dago Europa Hegoaldean baina gai hau mahaigaineratu nahi nuke: hainbeste behar dugun eta maite dugun Natura salbatzeko ehiztariak desagertu egin behar al du? ala Natura babestuz ehiztariak gizartearekin posible ote du bizikidetza? Ehiztaria eraldatuz dihoa naturzaleek eta ekologistek hala behartuta. Euren kontzientziak ere naturzale direla diote… Ehiztaria bai ala ez… zenbat eta non… noiz eta nola… Eztabaida latza dago



Europako Parlamentuan. Estatu Frantsesean hain politizatua dago gaia non Ehiztariek C.P.N.T. (Chasse, Pêche, Nature et Tradition) Elkartea sortu zuten; hauteskundeetan miloika botoekin egiten dute egundoko presio Politikoa. Gertakari honek garbi erakusten du "Ehiza"_ taria gizartean errotutako "kultura" dela. Ez dakit kultura den, ohitura den, tradizioa ala…

Irudi batek ez du ehiztarien apologia egiten, ez da hori behintzat nire asmoa, baina oso zale izan naizen gai honek eztabaida sakon baten egundoko beharra du.

Bakoitzak izanen du bere aburua. Margo bakoitzak du bere ipuina, istorioa, ametsa, desira, kritika, gorrotoa, malenkonia edo maitasuna.

Nik ere ekologista izan nahi nuke… Natura da gure arnasa.

MENDIAREN ITZALA

Hamabost aldiz urtero
Bisita-bide, uher okerrak;
Bi guardien erdian eta soa
Leihoetara iheska,
Mendiaren itzala,
dator argitara.
"Zubira" heltzen naizenean,
Egunez,
ikusten zaitut Mendia.
Goizeko hamarrak aldera,
han zatoz
nire presentzia ikustera.

Laino eta edurrak
estaltzen dizute
dekozun Gailurra.

Haitz sendoa zara,
horrenbeste aulki-harriz jantzia
Ekaitzen galernari irauteko,
haizeak
albotik jotzen zaituenean.

Urak zabaltzen dizu
bide eta tximurrak,
Untzi errekak
Topetan zoazenean.

Haitzuloetan altxor
Preminazkoez gordeta dekozu
barruko ertzetan.
Zugaz irudi hoberenetakoak eldu ninduan,
konkor Herria urrunera ikusterakoan.

**J.Sagardui** *Gatza*







PARADISUA

TXINDOKI





MENDIZALEA





## MENDIA

Mendian jaio
Mendian bizi
Mendiz ibilian dena ikasi,
Babestu
Ninduen mendiak
Asko ibiliz
Ireki bideak,
Iparralde mendiz
Hegoalde bitarte,
Mugarik dagoen eni ez galde,
Handik honuntz
edo hemendik hara,
Makina bat Euskaldun
bagara,
Euskaraz ikasi,
den-dena
Herriarentzat hezi.

## AMEST BAT IZAN ZEN

JOSEBA, 1997ko ekaina (Fresnes)

Gau batez ihes egin nuen gartzelatik.
Amets egiten nuen eta ametsak gau batez
zurekin maitemindu ninduen.
Hain zintudan gogoko, derrigorra zen gau batez
ihes egitea. Banekien zure ondoan onartuko ninduzula,
eta nire besoetan hartzen utziko zenidala.
Maitasunak ametsa gainditu zuen eta errealitateko
historia bilakatu zen.
Ilargiaren argian, ni txori bihurtu nintzen,
zure gelako leiho azpitik igo eta zure ondora
hurbiltzean, zure gorputzaren irudi goxoari
so geratu nintzen.
Oheko estalkiak dilindan lurretaturik zeuden,
gauean irakurtzen ari zinen goxo.
Hain zinen eder, hain zinen goxo,
zure gorputz puska biluziak agerian,
hotza harrapatzeko zorian...
Nire eztarria korapildurik, ene bihotzaren
taupadak esnatuko ote zintuen herabe,
estalkia ukitzeko beldur; zure lo goxoa
hautsiko zelakoan...
Gaueko freskurak hoztuko zintuen arduraz,
zure loaren sakonak xamurturik,
Lozorro berean uztea erabaki nuen,
Estalkiari oratzeko tentaldiarekin,
Ea esnatuko zindudan beldur
edo herabe...
Orduan, zure masaila gorrian musu
bat eman nahi nizun...
Eta besoetan har, maite zaitudala esateko.
Ilargiaren argian, izarren hautsak lagun
nituelarik, kanpora irten nuen eta so
nengoelarik, zure gorputza mugitu zen
seguraski leihoak istean egin zuen zarata-xirristak
iratzarrita.
Ez nauzu ikusi baina ziur nago nire
usaia ezagutu zenuela, apurtxo bat ohostu
baitizut...
Pozik nago, gau batez ihes egin dudalako,
eta penaz, ondoan egonik, zure fereka
gabe itzuli naizelako.
Dena amets bat izan zen.



Gartzelan egindako margo eta marrazki bilduma hau katalogo liburuxka batean bildu eta argitaratzea proposatu zioten Josebari gartzelako Burkide batzuek. Batak eta besteak ikusten zituzten margoak eta "*bazituela ehundaka batzu*" baina argitaratzeari edo erakusketari beldur apur bat zion. Dena dela, ideia hori garatzen hasi zen Xabier Tximenok eta Jonek animatuta. Horrela izanik, bere herriko udalak aretoa eskaini zion eta 2003ko otsailean erakusketa egin zuten. Oñatiko erakusketaren arrakasta ikusi ondoren animatu eta "*katalogoaren*" maketazioa prestatzen hasi zen. Oñatin 40 bat margo bakarrik paratu ahal izan zituzten, bere gogoa lan guzia azaltzea zelarik, hau da, ehun bat margo paratzea. Erakusketa horretarako aretoan margoak nola jarri azalduz eskema bat egin zuen nahiz eta ezin izan zituzten denak jarri, apur bat penatua sentitu zelarik. Baina bere bakarkako lehen erakusketak izugarrizko arrakasta izan zuen eta aurkezpenerako triptikoan horrela idatzi zuen. Aldi berean, ikusmina izatetik, erosi ere egin nahi izan zituzten hori ezinezkoa zelarik, margo gehienak jende partikular eta senideen "*kolekziotan*" daudelako. Beste erakusketa batzuk egiteko gonbidapenak ere izan dira baina margo guziak biltzea, dena ondo antolatu eta zaintzea zama handia da eta hori dena hirugarren pertsona batek bakarrik egin behar duenez odisea bat suertatzen da. Dena den, azken urteetan ez du margotzeko aukerarik izan eta, gehienbat, ingurukoek animatuta egin du GARTZELAKO LEIHOTIK liburua, bere iruzkin, adierazpen, gogoeta, istorio eta lagun batzuen poemekin. Katalogo honetan Tximenoren zenbait margo ere ikusiko dituzue, biak elkarrekin zeudela asmatu zuten proiektu hau, eta ikusi ere, katalogoaren bidez Euskal Herria osorako erakusketa bezain egokia eskaintzen zuela. Gainera, egitasmo honek gartzelako giroa irudietan ikusi nahi dutenei aukera handia eskaintzen die. Eta nola ez! margozaleen *morboa* ere asebeteko duelako. Berak apaltasun osoz maila handikoa ez dela esaten du baina, aldiz, denek ulertzeko modukoak direla.



JOSEBA ARREGI EROSTARBE

1946. Oñati.

1992. urtean atxilotu zuten estatu frantsesean eta 2000. urtean estraditatu zuten Espainiara. Egun Jaengo espetxean daukate. Erakusketa bat egin zuen Oñatin, bere jaioterrian, eta baita ere, Frantzian preso zegoelarik, areto batean edo bestean, bere lanen erakusketak burutu ziren.



ataramiñe

EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA ETA ARTE KOADERNOAK